

# ILL NAY ETA ECIÑ ILL

Milla ta zortzireun
zortzigarren urtean
apirillaco illaren
ogueigarrenean
berso bi paratzeco
beta deanean;
aleguiña eguingodet
gaurco eguneau,
señale da nere ustez
oraingo leguean.

—

Biotza daucat triste
alegratu ezin det
motivoa cer deran
declaratu nai det;
cautibaturic nauca
dama polit batec
ni atormentatzen nau
crueldade onec
berac ez du culparic
esango det ceñec.

—

Iru urte dirade
padecitzen derala
eta ez da oguei egun
declaratu naizela;
eranzun ziran bada
bear zan bezela,
nerea izango zala
nai banuen ala,
eguiaz esan ziran
maite ninduela.

—

Lenago joaten nitzan
eche orretara,
nere beguiac zutzaz
consolatutzera:
echecoac ez zequiten
begui oben sarrera
bacarric nere jornada
zala zu icustera,
¡ay, Jesus! etorri da
guztiac galtzera.

—

Gurasoac nai ez arren
gu bioc nai badegu,
pena orren infernua
logratuco degu,
aimbeste gau tristetan
naiz ni desbelatu,
unio dichoso au
dutelaco galdu
alperric zure aitac
ezetz esango du.

—

Amoriyo zer dan
jaquin nai duena,
emen paraco diot
pintura bat ona;
lenago joco dute
ceru goyac lurra,
eta erorico da
norteco izarra,
itzalico dan bañan
daucadan su garra.

—

Ill nai eta eciñ ill
agonía tristea,
zu cerala motivo
urriqui zaitea;
baña ¿nola izango da
zuc culpa izatean?
fiña izan cerade
munduco leguean.

—

Encargatzen zaitut
ill da guero ere;
arren leyaltadea
bear dirazu gorde;
egon albazintezque
dibertitu gabe
ez beguira guizonari
urrutira ere.
¡Adios nere maitea
ondo bizi zaite.

—

Nere entierrora
bear dezu etorri,
enterratu ta guero
luto beltzez jantzi;
publicatu calean
mundu guciari,
alargundu zerala
esan lagunari
asco nai zeniola
difuntuchuari.

—

Encargatzen zaitut
ni iltzen naizeneco,
nere biotz gaisoa
erregistratzeco;
or dira arquituco
zure zortzi letracho,
orduan cera fiñaz
desengañatuco
ez dirazu gueyago
falsoa deituco.

—

fortuna gabe jayo
ciñan mirabea.

Guernica.—Imp. de Ccitia y Compañía

Severo Altube
Guernica